# BEGUI BELCH BATI.

1

O-roi-tzen al ce-ra-de zu, be-gui belch go-zo-a, el-ca-rre-quin ma-zur-ka bat dan-tza-tu-ta-co-a

O raindic i-rudi-tzen zait ne-ri, ¡O-roitzgal-du e-ci-ña! ne-re be-so-ac us-tai-tzendu-e-la zu-re gue-rri fi-ña.

2

Zuri beguira nijoan,
¡ceruan nere ustez!
eciñ aseric beguiac
zure edertazunez.
Biotz nerearen parez pare
cijoan zurea,
ordutic daramat nere pechuan
penazco catea.

3

Aimbesteco zori ona
zure aldamenean,
¡aingueru bat besoetan,
ta arequin airean!
Ischildu zan soñu pozgarri hura
ondo penarequin,
ta joan ciñan eramanaz ¡Ay! nere
biotza zurequin.

4

Ordutic illtzen bici naiz,
¡gau traidorea!
dantzac ostu ciran poza,
soñuac paquea.
Bein ni gana cenituen jaso
beguiac nai gabe,
nereetan cegoan nere anima
ta eguin ciñan jabe.

5

Donostitic joatencera
ez daquit nic nora...
¿Ez cera bañan igoco
ceruetan gora?
Iñauteri abetan nere suertez
icusten baguera,
eman bearco nazu bici bear badet
biotza ostera.

6

Urte gucian negua
ichoten naucazu,
neguan Iñauteria,
Iñauterian zu.
Etorri dirade ta ez icusi
iltzea litzaque,
ala nago beldurrarequin dardar,
ez poz ta ez paque.

7

Aurten ez zaitut utzico
maitea bailean,
eranzun bat zure abotic
aditu artean.
¿Nai dezu dantzatu? esan bearrez,
asmo abec ditut,
¿Nerequin ezcondu nai dezu, ederra?
galdetuco dizut.